# Igandea



**berria**
2013ko urriaren 6a






1995eko uztailaren 1ean Baionan Joxean Lasa eta Joxi Zabalari egindako omenaldia.
BOB EDME

# 30 urte GALduta

**1983ko urrian abiatu zen Ipar Euskal Herria odolez blaitu zuen Espainiako Estatuaren gerra zikina.**

# Zikina, garbitu gabe



Josep Borrell, Jose Barrionuevo eta Felipe Gonzalez Guadalajarako presondegiko atean. 'DIRTY WAR, CLEAN HANDS'

**30 urte igaro dira GAL bere hilketekin hasi zenetik. Baina urte hauek guztiek egiaren zati bat soilik ekarri dute estoldetatik argitara.**

Irune Lasa

Egia eskatzen du oraindik Mikel Goikoetxea *Txapela*-ren bikotekide Izaskun Ugartek. «Guk, benetan, egia jakiteko inongo aukerarik ez dugu, ez dugu eduki eta ez dakit inoiz edukiko dugun. Baina guri hori ere zor digute». GALek haren alaben aita hil zuela 30 urte beteko dira abenduan, eta minaz ere hitz egiten du: «Felipe Gonzalez joan zen kartzelako atera, Barrionuevo eta bestea babestera; atxikimendu osoa eman zien, dena da horrela, baina berdin da. Gaur egun, batzuk mintzen dira gauza guztiekin; besteok ez dugu ezerekin mindu behar». Ugarte, hala ere, pribilegiatu sentitzen da: «Estatuaren indarkeriaren biktima guztien artean errekonozimendu gehien GALekook lortu dugu». Baina mina hor dago behin eta berriz: «Ateratzen dituzte indemnizazioak eta: 'Ez, ETAko kideei ez, nahiz eta haiek hil, horiei ez'. Eta ze kulpa dauka nire alabak, zuk haren aita hiltzeko? Nire alabak ez dauka diru hori jasotzeko eskubiderik, zuk hil duzularik, estatuak hil duelarik? Ez, beste biktimak mintzen dira... Hemen kokoteraino gaude mintze horiekin», dio Ugartek. «Ematen du merezita daukagula. Baina ez da posible, bestela heriotza zigorra praktikatu dute, eta errekonozitzea daukate».

Heriotza zigorra nolabait praktikatzeko aukera aipatzen da, bai, GALen sortze agiritzat jotzen den dokumentuan, *Liderren eliminazioa* idazpurupean. Baina, hasiera batean, CESIDeko zuzendari Emilio Alonso Manglanoren aginduz landutako 1983ko uztailaren 6ko txosten hartan, azken ondorioetan, ekintza armatuaren modu jakin bat hobesten da besteen gainetik: «Egoera edozein dela ere, ekiteko modu gomendagarriena bahiketa bidez desagerraraztea dela uste da».

Joxean Lasa eta Joxi Zabala izan ziren GALen lehen biktimak, eta 1983ko urriaren 15eko gauean bahitu eta gero, hainbat egunez torturatu, hil eta desagerrarazi egin zituzten. Ondorengo ekintza ere bahiketa saio bat izan zen, Joxemari Larretxearen kontrakoa, baina ez zuten bururatzea lortu. Eta hirugarren ekintza ere bahiketa izan zen, Segundo Mareyrena. Hura ez zuten desagerrarazi, beharbada beste bat zelako bahiketaren helburua, erratuta bahitu zutelako Marey hendaiarra. Hurrengo ekintzan, Ramon Oñederra *Kattu*-ren hilketan, ezin jakin bahiketa saiorik izan zen, tirokatu zutenean bakarrik baitzegoen Kaietenia tabernan.

## Erabakia

Halaxe hasi zen GAL lanean. Egiaren bila, zikin artean, topa daitezkeen argi izpi bakanetako bat da 1997an Espainiako Auzitegi Gorenaren aginduz desklasifikatutako agiri hori, *Ekintzak Frantzian* titulua duena. Adibidez, bertan ikus daiteke GAL ez zuela CESIDek sortu, txostenak gorago seinalatzen duelako: «Edozein modutan, terrorismoaren kontrako borroka osotara gidatzen duenak bakarrik erabaki ahalko du halako ekintzak abiatu edo ez».

Nor zen gidari hori? Atera dezagun orduko argazki bat. Felipe Gonzalezen gobernuan Narcis Serra zen Defentsa ministroa, armada, Guardia Zibila eta zerbitzu sekretuak, hots CESID, bere agindupean zituela. Jose Antonio Saenz de Santamaria jenerala zen Guardia Zibilaren buru nagusia, eta haren bigarrena zen Andres Casinello jenerala. CESIDeko buruzagia zen Manglano, eta haren aginduetara zegoen Juan Alberto Perote AOME Lan Berezietarako Talde Operatiboko buruzagi gisa.

Terrorismo gaietarako beste ministroa, Barne ministroa, Jose Barrionuevo zen. Rafael Vera haren azpian egon zen, aurrena Estatuko Segurtasunerako zuzendari moduan, Ministerioko azpiidazkari gisa ondoren, eta, 1986tik aurrera, Estatu idazkari gisa.

Bizkaiko gobernadore zibil Julian Sancristobalek hartuko zuen 1984an Veraren tokia Estatu Segurtasunerako Zuzendaritzan.

Urte haietan Ramon Jauregi zen Espainiako Gobernuaren EAErako ordezkaria, eta Luis Roldan zen Nafarroakoa. Sancristobalen lekua Iñaki Lopezek hartuko zuen (1984an) Bizkaiko go-

## *Kronologia: GALen atentatuak*

▪ **1983ko urriaren 16a:** Joxean Lasa eta Joxi Zabala bahitu zituzten Baionan. 1985ean aurkitu zituzten haien hezurdurak, baina 1995era arte ez zituzten identifikatu. Torturatu, eta buruan tiro eginda hil zituzten. GALen lehen ekintza izan zen.
▪ **1983ko urriaren 18a:** Joxe Mari Larretxea jipoitu, eta bahitzen saiatu ziren Espainiako Poliziako lau kide, Hendaian.
▪ **1983ko abenduaren 4a:** Segundo Marey bahitu zuten Hendaian. Abenduaren 14an geratu zen aske. GALek aldarrikatutako lehen ekintza izan zen.
▪ **1983ko abenduaren 19a:** Ramon Oñederra *Kattu* hil zuten Baionan, Kaietenia tabernan lanean ari zela zazpi tiro jota.
▪ **1983ko abenduaren 28a:** Mikel Goikoetxea *Txapela* oso larri zauritu zuten, tiroz, Donibane Lohizuneko etxe atarian. Urtarrilaren 1ean hil zen, ospitalean.
▪ **1984ko otsailaren 8a:** Angel Gurmindo *Stein* eta Bixente Perurena *Peru* tiroz hil zituzten, Hendaian.
▪ **1984ko otsailaren 25a:** Eugenio Gutierrez *Tigre* hil zuten Idauze-Mendin; euskara ikasten ari zen etxearen kanpoaldean zela, urrutitik tiro egin zioten.
▪ **1984ko martxoaren 1a:** Jean-Pierre Leiba hil zuten, tiroz, Hendaiako tren geltokira bidean.
▪ **1984ko martxoaren 19a:** Autobatean prestatzen ari zen bonba lehertu zitzaion Jean Pierre Cherid mertzenarioari, Miarritzen, eta bertan hil zen.
▪ **1984ko martxoaren 23a:** Xabier Perez de Arenaza hil zuten Miarritzeko gasolindegi batean. Motor batetik tiro egin zioten.
▪ **1984ko maiatzaren 3a:** Rafael Goikoetxea hil zuten, eta Jesus Zugarramurdi *Kixkur* zauritu, Arrosa eta Baigorri arteko errepidean, lanetik etxera autoz zihoazela tirokatuta.
▪ **1984ko ekainaren 15a:** Miarritzeko Cafe de Haouko atarian bonba bat lehertu, eta larri zauritu zituzten Tomas Perez Revilla *Tomason* eta Ramon Orbe. 43 egunera hil zen Perez Revilla.
▪ **1984ko uztailaren 10a:** Juan Jauregi Aurria, Bonifacio Garcia Muñoz eta Jose Luis Oliva Gallastegi zauritu zituzten Donibane Lohizuneko Consolation tabernaren aurkako erasoan, lehergailu bat botata.
▪ **1984ko abuztuaren 5a:** Denek kooperatibaren aurkako atentatua, lehergailua jarrita.
▪ **1984ko abuztuaren 23a:** Baionako Etxabe taberna metrailetaz tirokatu, eta han ziren hainbat lagun zauritu zituzten.
▪ **1984ko irailaren 21a:** Miarritzeko taberna bati erasoa egitera bidean Jean-Pierre Dauri eta Angel Vicente Garcia mertzenarioak atxilotu zituzten.
▪ **1984ko azaroaren 18a:** Christian Olaskoaga tiroz hil zuten Biriatuko aparkaleku batean, eta haren anaia Claude zauritu.
▪ **1984ko azaroaren 20a:** Bilbon zuen pediatria kontsultan lanean ari zela hil zuten Santi Brouard HASIko burua, tiroz.
▪ **1984ko abenduaren 11:** Jose Ramon Lopez de Abetxukoren autoan bonba jarri, eta Juan Jose Iradi zauritu zuten Hendaian.
▪ **1985eko otsailaren 1a:** Autoan lehergailua jarri zioten, eta zauritu egin zuten Xabier Manterola, Baionan.
▪ **1985eko otsailaren 5a:** Haren autoan lehergailua eztandarazita, larri zauritu zuten Christian Casteigts, Baionan.
▪ **1985eko martxoaren 4a:** Baionako Lagunekin tabernan larri zauritu zituzten Gotzon Zabaleta eta Josu Amantes, tiroz.
▪ **1985eko martxoaren 13a:** Getariko Briketenia taberna barrura lehergailuak jaurti, eta tabernako jabeak, Michel, Martin eta Jean Philippe Ibarboure anaiak zauritu zituzten.
▪ **1985eko martxoaren 26a:** Ziburuko Bittor tabernan zeudela, larri zauritu zituzten Ramon Basañez eta Jose Luis Calderon tiroka sartu ziren bi lagunek. Taberna barrura esku bonba bat ere jaurti zuten ihesean.
▪ **1985eko martxoaren 29a:** Baionako Pyrenees taberna tirokatu zuten. Benoit Pecastaing bertan hil zuten, eta Kepa Pikabea, Jean Marc Mutio eta Jean Jacques Hum zauritu.
▪ **1985eko martxoaren 30a:** Xabier Galdeano hil zuten Donibane Lohizuneko etxe atarian, tirokatuta. *Egin* egunkariaren sortzaileetako bat izan zen.
▪ **1985eko ekainaren 14a:** Ziburuko Trinket Txiki tabernan zeuden bi lagun, Emile Weiss eta Claude Doer, tiroz hil zituzten. Ihesean granada bat bota zuen erasotzaileak taberna barrura, baita jendeari tiro egin ere.
▪ **1985eko ekainaren 27a:** Santos Blanco Gonzalez *Aitite* errefuxiatu donostiarra hil zuten Baionan, kalean zihoala tiro eginda.
▪ **1985eko ekainaren 8a:** Juan Carlos Lezartua tirokatu eta larri zauritu zuten Ziburuko Bittor tabernako terrazan. Taberna berean egindako bigarren erasoa izan zen.
▪ **1985eko uztailaren 16a:** Fernando Egileorren aurkako atentatu saioa, Angelun. Bonba bat topatu zuen bere auto azpian.
▪ **1985eko abuztuaren 2a:** Juan Mari Otegi *Txato* tiroz hil zuten Donibane Garazi inguruko errepide batean. Lanetik atera eta autoan zihoala tirokatu zuten.
▪ **1985eko abuztuaren 31:** Dominique Labegerie tiroz zauritu zuten Donibane Lohizunen. Pertsona bat bere etxeko lehiora hurbildu, zerbait galdetu eta tiro egin zion.
▪ **1985eko irailaren 4a:** Jose Arraztoaren aurkako atentatu saioa. Bonba bat jarri zuten haren autoan.
▪ **1985eko irailaren 25a:** Baionako Monbar hoteleko kafetegia tirozjosi, eta barruan zeuden lau errefuxiatu hil zituzten: Joxe Mari Etxaniz *Potros*, Inaxio Asteasuinzarra *Beltza*, Agustin Irazustabarrena *Legra* eta Xabin Etxaide *Eskumotza*. Jean Iriarte ere zauritu zuten eraso berean. Lekukoek, erasotzaileei jarraitu, eta haietariko bi harrapatzea lortu zuten.
▪ **1985eko abenduaren 4a:** Fernando Biurrunen aurkako atentatu saioa. Heletako bere etxeko atean lehergailua jarri zuten, baina hura jabetu, eta Poliziak indargabetu egin zuen.
▪ **1985eko abenduaren 24a:** Robert Caplanne tirokatu zuten Miarritzen, Royal tabernatik atera berritan. Jasandako zauri larrien ondorioz hil zen, 1986ko urtarrilaren 6an.
▪ **1986ko otsailaren 8a:** Baionako Batxoki tabernan zirela tirokatu, eta zauritu egin zituzten Karmele Martinez Otegi —Juan Mari Otegi *Txato* GALek hildako iheslariaren alarguna—, haren 3 urteko alaba Nagore, Juan Luis Zabaleta errefuxiatua, haren 5 urteko alaba Ainitze, eta Frederick Haramboure.
▪ **1986ko otsailaren 13a:** Ramon Basañez tirokatu eta larri zauritu zuten, Donibane Lohizuneko La Consolation tabernan zela. Basañezek jasandako bigarren atentatua izan zen. Consolation tabernan eginiko bigarren erasoa izan zen.
▪ **1986ko otsailaren 17a:** Bidarrai inguruko errepide batetik Baigorri aldera autoan zihoazela, tiroka hil zituzten Christophe Matxikote eta Catherine Brion.
▪ **1987ko uztailaren 24a:** Juan Carlos Garcia Goena hil zuten Hendaian, haren autoan lehergailu bat eztandarazita.

bernadore zibil moduan, eta Julen Elgorriaga izan zen Gipuzkoakoa.

PSE-EEko karguetan, Bizkaiko idazkari nagusia zen Ricardo Garcia Danborenea, auzi honetan guztian zeresan handia izango zuena gero.

Poliziari begira, Francisco Alvarez komisarioa zen Bilboko poliziaburua eta, ondorioz, MULC Borroka Antiterroristaren Aginte Bateratuko EAEko burua. Gero, 1984an, Espainiako Gobernuko Operazio Berezietarako Kabineteko agintaritza hartuko zuen. Eta Miguel Planchuelo komisarioak hartuko zuen Bilboko poliziaburu postua. Haren agindupean zeuden, besteak beste, Jose Amedo, Michel Dominguez, Julio Hierro eta Francisco Saiz poliziak. Gipuzkoako poliziaburua, berriz, Jesus Martinez Torres zen.

Hainbeste adar erakusten dituen argazki horri begira, argi ikusten da organigraman oso gora joan behar dela «terrorismoaren kontrako borroka osotara gidatzen» zuen horren bila.

Ildo horretan, hainbatetan esan izan da X jaun hori Espainiako Gobernuko presidente Felipe Gonzalez bera zela. Adibidez, hori esan zuen Bizkaiko PSE-EEren buruzagi izandako Ricardo Garcia Danboreneak Garzonen aurrean *Oñederra auzian* 1997an egindako deklarazioan, aurretik kazetariei adierazitakoa berretsiz. Ordurako, Mareyren bahiketagatik auzipetuta zegoen Garcia Danborenea. Haren arabera, «GAL gobernuaren ekimena izan zen, eta gobernu horren aitzindaritzan hura babestu eta akuilatu zuen presidente bat zegoen. Gobernuko presidentearen agindu zuzenaren pean egin ziren ekintza batzuk».

### Kolore guztietako zikina

X-k, Y-k edo Z-k, norbaitek ekiteko agindua eman zuen. Eta Juan Alberto Peroteren paperetan ikusten da ez zutela denbora askorik behar izan. GALen sortze agiria 1983ko uztailaren hasierakoa zen, eta urte bereko irailaren 28an, CESIDeko buru Manglanori jakinarazi zioten ETAko kideen kontrako erasoak hasiko zituztela Donostiako komandantziako guardia zibil batzuek. Ez hori bakarrik, ekintza horien paraleloan, estatuko beste segurtasun indarrek eta Frantzian kontratatutako mertzenarioek beste ekintza batzuk abiatuko zituztela ere bazioen agiri horrek.

Baina agiri horrek ez du esan nahi CESIDek ez zuenik horren berri. Hala, agiri horretan bertan, ekintza horiek CESIDen jarduera oztopatzen zutelako kezka aipatzen zen —jada planifikatuta zegoen CESID, eta helburu *erabakiorragoak* zituen—.

### 'GAL marroia'

CESIDek lan txukunagoa egiteko asmoa zuen nonbait, eta beste eragileen aldebakarreko ekinbideak horretan oztopo izan zitezkeen kezka zuen, nahiz eta propio Ipar Euskal Herrian eta Frantzia Hegoaldean zabaldu zen Huron espioitza sareak bildutako informazioa izan GALeko ekintzaileek euren lan zikinerako zuten oinarri nagusia. Hain zuzen, Juan Alberto Perotek koordinatzen zuen informazio bilketa hori AOME Lan Berezietarako Talde Operatiboko buruzagi zen heinean. Horri guztiari, CESIDen GALeko parte hartze militarrari deitu izan dio te hainbat analistak *GAL marroia*. Sortze agiria delakoan ere, hain zuzen, «bahiketa bidezko desagerrarazteak» aipatu aurretik azpimarratzen da informazioaren garrantzia: «Aurretiazko informazio eguneratu eta kalitatezkoa izatea beharrezkoa da. Horretarako izendatzen denak jomugen katalogo bat osatu behar du».

Informazio lanak egiteaz gain, parte hartu al zuen zuzenean CESIDek GALen ekintzaren batean? Ezetz esan zuen Perotek Alcala de Henaresko presondegi militarrean egindako idatzi batean: «CESIDeko kideak borroka aktibotik bazterrera uzteko erabakia borroka antiterrorista osotara gidatzen zuenak hartu zuen. Gertakariren batean militarrak

(Hurrengo orrialdean jarraitzen du)



**Christiane Fando**

Abokatua

«Hona estatuko ordezkari bakar bat ere ez zen agertu»

«Geroan jakin dut, eta ez da hurbilekoek emandako informazioa, kanpokoa baizik, Amedok bahitu nahi ninduela egun horretan, zepo bat jarri zidatela». «Bakardadea da orduko oroitzapen handiena. Ezker abertzalea eta errefuxiatu mundua bakarrik zegoen GAL salatzeko, mundu guztiaren aurka».

Urriaren 10ean, elkarrizketa osoa. **www.berria.info/GAL**

(Aurreko orrialdetik dator)

inplikatuta agertu ziren, eta, Frantziarekin gatazka politikoa sortzeko arriskua zegoenez, guztia segurtasun indarren eremuan gelditzeko erabakia hartu zen, Guardia Zibilean eta Polizian, hain zuzen». Hurrengo urteetan planteatu ei ziren «berriz ere ekintza biolentoak zekartzaten jarduerak», zioen Perotek, «baina hori ez da gaia une honetan».

CESIDek hartu zuen, dena den, GALen zigilua egiteko lana, Perotek aitortu duenez. Manglanok eman zion horretarako enkargua. Garzonen usteen arabera, Andres Casinellok eskatu zion CESIDi zigilua egiteko. Peroteren arabera, behin zigilua eginda, Barne Ministeriora bidali zuen CESIDek.

## 'GAL frantsesa'

Dena den, ez ziren CESID eta haren Huron sarea GALen jomugei buruzko informazioa bildu eta eman zuten bakarrak. *GAL frantsesa* ere bazegoen. Poliziak ziren, Espainiak diruz erositakoak, jomugen inguruko informazioaren truke. Hala, Guy Metge superintendentea agertzen da, adibidez, Amedoren eta Sancristobalen deklarazioetan. Aireko eta Mugetako Poliziako (PAF) komisarioa zen Metge, eta Jose Amedok jarduten zuen batez ere harekin. Hainbat informazioren arabera, Amedoren eskariz, Metgek errekrutatu zituen beste bi polizia frantses. Horietako bat Jacques Castets zen, Baionako inspektore nagusi izandakoa, zeinak erretreta hartua zuen. Bestea jendarme bat zen, Jean Louis delako bat.

Oraindik ere Jean Louis hori nor den argitzeko dago GALen inguruko zikinen artean. Hori bai, atxilotutako mertzenarioek maiz aipatu zuten Jean Louis, hainbat ekintzatan hark seinalatzen zuelako jomuga zuzenean. Adibidez, epaitegiek frogatutzat jo zuten 1986ko otsailaren 8an Amedo eta Dominguez hiru mertzenario portugesekin Irunera iritsi zirela, Jean Louis delakoarekin hitzordua egiteko. Gero, hiru mertzenarioak eta Jean Louis Hendaiatik trenez Baionara joan ziren arratsaldean. Han, jendarmeak lagunduta, hiru taberna «ikuskatu» zituzten, Pyrenees eta Batxoki horien artean. Hura hobetsi ei zuen Jean Louis delakoak. Batxoki tabernan zeudenen artean bereizketarik ez egiteko esan zien hiru mertzenario portugaldarrei —Figueiredo, Carvalho da Silva eta Ferreirari—, han zeuden bizardun guztiak zirela ETAkoak. Jarraian, Jean Louisek armak eman zizkien, eta gaueko bederatziak aldera, hiru mertzenario portugaldarrek tiroz josi zuten Batxoki taberna, eta sei lagun zauritu, tartean 3 urteko Nagore Otegi eta 5 urteko Ainitze Zabaleta neskatoak.



**Jakes Bortairu**

Oroit eta Sala-ko kidea

«GALek lagundu du Frantziaren jarrera aldaketa»

**«Frantziaren konplizitatea zenbaterainokoa izan zen ez badakigu ere, gutxienez gerla zikin hori egiten utzi zuen, interes bat ikusten zuelako errefuxiatuen kontrako politika martxan emateko». «Kasu batean salbu, sekula ez da Frantziako Justiziaren aitzinean dosierrik ireki Frantziako polizia batzuen aurka».**

Urriaren 10ean, elkarrizketa osoa. **www.berria.info/GAL**

Ezer gutxi ezagutzen da egiaz *GAL frantsesaren* inguruan. Jean Louis delakoa nor den ez da sekula argitu. Guy Metge 1985ean hil zen, poliziakideekin bazkari bat izan ostean, bere Audian errepide zuzen-zuzen batean zihoala istripua izan ostean. Jacques Castets ere hilda dago. 1993an hil zen, minbizi baten erruz, eta ordura arte inork ez zuen GALi buruz galdekatu.

*GAL frantsesaren* eta Frantziako polizien esku hartzeari buruz argitu gabeko beste gai bat ere badago. Behin baino gehiagotan, GALen ekintzengatik Ipar Euskal Herrian egindako atxiloketetan, mertzenarioen esku euskal errefuxiatuen argazkiak topatu ziren. Eta argazki horiek babesa eskatzeko tramiteetan errefuxiatuek administrazioari ematen zizkieten argazki berberak ziren.

## 'GAL berdea'

Guardia Zibilak GALen izan zuen esku hartzeaz hitz egiteko, 1983ko abuztura jo behar da. Jose Maria Velazquez Soriano guardia zibilak aitortutakoaren arabera, bilera batera deitu zuten, baina ez Gipuzkoako komandantzian, Enrique Rodriguez Galindoren etxean baizik. Intxaurrondoko etxebizitza batean bildu ziren dozena bat guardia zibil.




1985eko irailaren 25a. Monbar taberna tiroz josi, eta lau errefuxiatu hil zituen GALek. DANIEL VELEZ

Han, Galindo komandantea ez zen itzulinguruka ibili: «ETAri labankadak emateko aukeratu gaituzte, baina ez orain egiten dugun eran, beste modu batean baizik. Frantziara pasatzea da kontua, baina ez legezko moduan, horrela ezin dugulako. Pasatu, eta han egin hemen egiten duguna».

Irailean jada guztia prest zuten. Hilaren 26an, CESIDek Donostiako Guardia Zibilaren komandantzian zuen gizonak, Pedro Gomez Nietok, elkarrizketa bat izan zuen Intxaurrondoko agintari ez nominal baina errealarekin: Enrique Rodriguez Galindorekin.

Galindok ez zekiela, Gomez Nietok grabatu egin zuen elkarrizketa, eta gero CESIDera bidali. «Datorren ostegunean, taldeak ekin dezake?», galdetzen dio Galindok Gomez Nietori. Eta azken horrek zalantza agertzen dio Intxaurrondoko buruari. «Ea, nire komandantea: zer irabazi dezakegu honek zerbaitetarako balioko duela? Esan nahi dut, nire komandantea: guk, hara joan, eta

# Ilun-ikarak

## Gerra zikina ezaguna izan arren, GAL izan da horren atalik odoltsuena azken 80 urteotan Ipar Euskal Herrira joan diren euskal iheslarientzat.

**Aitor Renteria**

Francoren heriotzaren ondorengo aldaketek aldi laburrerako hustu zituzten Espainiako espetxeak, baina sekula ez ziren sorterrira itzuli iheslari politiko guztiak. Espainiako presondegiak betetzen joan arau, gero eta gehiago ziren Ipar Euskal Herriko karrikak hegoaldeko ahoskeraz, askatasun egarriz betetzen zituzten iheslariak. Gazteak ziren, eta adinaren kemena karriketan nabaritzen zen. 80ko hamarkadaren hastapenean ehunka ziren Ipar Euskal Herrietan, zenbaketa edo erroldarik egin ez den arren.

Arrats apalean, iheslari taldeak ohikoak ziren alde zaharretan, Baionan bereziki. Asteburuetan, haiek ikustera zetozen senide eta lagunek handitzen zituzten taldeak. Poteoa existitzen ez zen hiri horretan, 10, 20, 30 pertsonak osatzen zituzten taldeak arruntak ziren asteburuetako poteoetan. Karrikako giroa bestelakotzen zuen. Lapurdi barnealdeko, Nafarroa Behereko eta Zuberoako jendea ere erakartzen zuen giroak. Manifestazioen aitzakian, edota egun pasan, jende ugari biltzen zen, bereziki Hendaia, Ziburu, Donibane Lohizune, Miarritze eta Baionan. Baiona Ttipian bereziki. Arrunta zen haien presentzia. Francoren ondorengoen kontrako borrokalari gisa ikusten zituzten oro har. Errefuxiatuek, Hego Euskal Herriko aipamenean, babes politikoa eskatzen zutelako. Ipar Euskal Herriko jendeen hitzetan, iheslariak bereizten zituena ez zelako babesa, Poliziatik eta torturatik ihes egin izana baizik.




Iheslariek Baionan 1984ko irailean egindako manifestazio bat. D. VELEZ

GAL agertu zen. Bahiketa, hurbileko tiroketa edo urrutitik jaurtikitako tiroa. Balizko heriotza mota guztiak aipatzen zituzten iheslariek. Babesteko aukera gutxi, ordea. Iheslariek babes politikoa eskatzen zuten Baionako Suprefeturan. Babes politikoa kudeatzen zuen OFPRA erakundeak ezezkoa ematen zien hilabeteen buruan, eta urteak pasatzen ziren kasua sakonean aztertu arte. Anartean, iheslariek Recepise izeneko agiriak zituzten, sei hilabeterako (salbuespenak), hirurako (gutxik) eta hilabetekoak (gehienek). Hiru argazki eman behar zituzten suprefeturan, aldiro. Helbidea agertzen zen agirian.

Zeuzkaten elementu bakanak baliatzen hasi ziren iheslariak, hala nola suprefeturan emandako argazkian ohiko itxura ez agertzea, edota helbide bat eman eta bertze batean bizitzea. Anitz ziren Ipar Euskal Herrian, gela bat edo bi zeuzkaten arren, administrazioari begira hamar edo hogei iheslari zituzten etxeak.

Familien kasuan, egoera larriagoa zen. Ikastolara eraman behar zirelarik haurrak. Etxea eta ikastola ez ziren mugitzen, eta aterabide bakarra ibilbidez aldatzea zen. Hirietan, nekez, baina egin zitekeen. Herri txikietan, aldiz,




pertsona bat paretik kenduko dugu. Hori gutxienekoa da. Zuk jakingo duzu horrekin zer irabazten dugun. Zuk badakizu ETAn hamar kide gehiagok izena ematea dela horren ondorioz lor dezakegun gauza bat. Pentsatu al da honi zein publizitate eman? Ze estaldura publiko emango diegu hedabideei?». Galindoren erantzuna motza izan zen: «Batere ez. Batere ez». Gomez Nietok: «Eta jendeak zer pentsatuko du?». Galindok: «Jendeak pentsa dezala nahi duena. Guk ez dugu txintik esango». Gomez Nietok zalantzan jarraitzen du: «Adibidez, horrek ez du ekarriko eurak berak paretik kentzea? [joatea]». Aukera horrentzat ere badu erantzuna Galindok: «Jakina, gutxien espero dutenean, beste kolpe bat prestatuko dugu hiru hilabetera, bost hilabetera... eta bigarren kolpea emango dugu. Gero, zazpi hilabetera, hirugarren kolpea. Eta gero, urtebetera edo komeni denean, jomuga bati buruzko informazioa dugunean... gurea da haien gainean eurek gure gainean ekiten duten modu berean ekitea, ezer erreibindikatu gabe».

Elkarrizketa horretan agertzen zituen zalantzak CESIDen ere agertu zituen Gomez Nietok. CESIDeko Manglanok irailaren 28an «ekintzen berehalakotasuna» aipatuz jasotako mezuan zalantza berberak agertzen dira. Ez dira inola ere planeatutako ekintzen zuzentasunari buruzkoak, ez, egokitasunari buruzkoak baizik. Estatuko segurtasun indarren ekintza horiek kezka iturri dira, CESIDen jarduera «oztopatu» dezaketelako —«jada planifikatuta zegoen CESID, eta helburu *erabakiorragoak* zituen»—.

Zalantzak zalantza, badirudi ez zela arazorik izan Galindoren asmoak bete eta *GAL berdearen* lehen ekintza abiatzeko. Pedro Gomez Nietok Juan Alberto Peroterekin izandako elkarrizketaren transkripzioa irakurrita dakigu Lasa eta Zabala nola hil ziren: «Hori bi tiro buruan izan ziren», azaldu zion Gomez Nietok Peroteri. «Bi tiro eta kaputxarik eta ezer gabe?». «Ez, ez, bi tiro izan ziren». Perotek: «Alegia, hil egin zituztela, kontua ez dela hil egin zitzaizkiela». Gomez Nietok: «Bai zera, bai zera... Hori, lehendabizi bi hobi egitera behartu zituzten, bi hobi eginarazi genizkien».

1995eko martxoan identifikatu zituzten 1985eko urtarrilean ehiztari batek Bussoten topatutako bi gorpuak. Lasa eta Zabalarenak ziren. Haien heriotzaren gaineko ikerketa zabaldu zen Auzitegi Nazionalean. Lehen ikerketek jada Intxaurrondo seinalatzen zuten, eta, 1995eko irailerako, Peroteren paperek jada hilketekin zuzenean lotzen zituzten Galindo eta Julen Elgorriaga Gipuzkoako gobernadore zibila. Beste hiru guardia zibil ere, Angel Vaquero Hernandez, Enrique Dorado Villalobos eta Felipe Bayo Leal, auzipetu eta kondenatu zituzten Lasa eta Zabala bahitu eta hiltzeagatik —ez torturatzeagatik—, zeresan ugari eman zuen epaiketa batean. Gomez Nieto hasieran auzipetu bazuten ere, gero atera egin zuten prozeduratik, Espainiako Gobernuak CESIDen paperak ukatu ostean.

Bayo Leal eta Dorado Villalobos guardia zibilen ekintzei jarraika, *GAL berdekotzat* jo daitezkeen gutxienez beste lau ekintzatara iristen gara, batzuetan argiago besteetan baino, Jose Maria Velazquez Soriano guardia zibilaren testigantzaren arabera. Hala, hark epaileei kontatutakoaren arabera, Intxaurrondoko Informazio Zerbitzuan jakina zen eta hizpide Pedro Gomez Nietok eta Dorado Villalobosek hil zutela Ramon Oñederra *Kattu* (1983ko abenduan). Gurmindo eta Perurenaren hilketan parte hartzea ere egotzi zien Baltasar Garzon epaileak Bayori eta Doradori, baita

(Hurrengo orrialdean jarraitzen du)


Elgorriaga eta Galindo, Oñatin, 1987ko uztailean. DIRTY WAR CLEAN HANDS



**Daniel Velez**
Argazkilaria

«Pannecauko atentatu kopurua duen kalerik ez da»

«Frantziaren engaiamendua ere sakonki ikertu behar da. Nork zer egin zuen, eta Jean Louis B. horren nortasuna argitu». «Entzuketek erakusten dute GALeko mafiosoek uste zutela immunitate osoa zeukatela. Frantziako Poliziak zaintzen zituela eta beharbada saihestu zitezkeela atentatu batzuk».

Urriaren 10ean, elkarrizketa osoa. www.berria.info/GAL

---

abantzu ezinezkoa. Nahiago zuten, ahal izanez gero, bertze norbaitek eramatea ikastolara. Horrela ez zuten atentatu arriskurik. Gurasoen kezka, haurrek nola biziko zuten gerora tentsioa, nolako ondorioak utziko zizkien.

Egoera prekarioan, etxebizitza merkeak atzeman behar zituzten iheslariek, eta ingurua mugatua zen. Baiona Ttipian, Baiona Zaharrean edo Santagurutzen Zup izenez ezagutzen den auzoan biltzen ziren gehienak. Lana izateak bizimodua lagun zezakeen, baita ere bizia arriskuan ezarri. Gutxi ziren lantegi berean ari ziren iheslariak; gehienak sakabanaturik ari ziren. Gutxiago ziren autoa zeukatenak. Atentatuen arriskuak babesa antolatzera bultzatu zituen. Horrela, goizean goiz hasita, iheslariek errondak egiten zituzten lana zeukaten iheslarien etxeetatik, auto susmagarririkedo ba ote zebilen ikusteko. Aitzinetik auto azpian lehergailurik ote zegoen begiratu behar. Eman zezaketen babes bakarra, haien presentzia. GALekoak inguruan baleude, babesa eman nahi zuten horiek ziren jomugan. Egunero bi aldiz itzulia, goiz eta arratsaldez.

Eguneroko bizian, gauza sinpleak arrisku bihurtzen ziren. Familiarekiko lotura, adibidez. Familiari deitu ahal izateko, telefono publikoak baliatu behar. Familiak lanean, deitzeko tenorea gaua zen. Ipar Euskal Herrian aspalditik, arratsalde bukaerak karrikak soildu ditu. Orduan gehiago. Telefono publikoak gutxi ziren, gehienetan plaza erdian edo karrika ertzean. Telefono kabinak argia zuen. Edozein herritarrentzat babesa zatekeena arriskua zen iheslarientzat. Gauez animaliak ehizatzea bezala zen haientzat.

Jean Pierre Cherid GALeko kidea prestatzen ari zen lehergailuak eztanda egin ziolarik hil zen. Hiru hilabeteren buruan, GALek motor bat leherrarazi eta iheslari bat hil eta bertze bat zauritu zuenean, hura hiltzeko teknika aldaketa baino gehiago izan zen iheslarientzat. Haien pasaian edozein auto edo motor leher zitekeen. Iheslariak harrapatzeko aitzakian, arriskuan ziren ere haien familia eta lagunak. Denborarekin, anitzek aitortu dute aitzakiak ematen zizkiotela familiari ez joateko Ipar Euskal Herrira. Edo bederen, bisitak bakandu zituztela. Alta, anitzek ez zuten lanik, ez diru iturririk. Hego Euskal Herritik emandako laguntza, familiena eta lagunena, zuten etxea ordaintzeko eta jateko baliabide bakarra. Karrika erdian auto bat gelditurik ikusi eta bertatik janaria ateratzen ari zirela ikustea aski zen barnean iheslariak bizi zirela jakiteko.

## Herrian bizi, herrian hil

GAL ez zen aski izan iheslariak karrikatik ateratzeko. Irizpidea argi zuten iheslariek, eta adierazten zuten hitzez. Herrian bizitzeko eskubidea aldarrikatzen zuten, eta, arriskua izanik ere, engaiamendua, politikoa zein pertsonala, atxiki nahi zuten. Biltzeko ohiturak arriskuak areagotzen zituen. Leku zehatzetan elkartzen ziren, eta horrela ulertzen da atentatu gehienak, hildako gehienak eremu oso txikian gertatzeak.

Presioa, arriskua, haizeak zerabiltzan. Ostatu batzuetako nagusiek otoi gehiago ez sartzeko eskatu zieten iheslariei, batzuetan barneraino sartzeko, kanpotik ez zitzaten ikus. Edota haiek sartzean kanpoko ateak itxi. Abertzaleak eta euskaltzaleak biltzen zituzten elkarteak ere baziren, Baionan Biltxokoa. Ateak beti zeuden itxirik, eta, ezagutu ezean, barneko nehork ez zuen atea irekiko.

Presioak aldaketa sakona eragin zuen gizartean. «Bakean» bizi zen jendeak ez zuen ulertzen atentatuen arrazoia. Zuhurtziak agintzen zuen iheslariak ibiltzen ziren tokietatik eta ibiltzea edota iheslari taldeak zeuden ostatuetatik aldentzea. Kontrako norabidean, elkartasun keinuak ere indartu ziren eta anitz izan ziren, Anai Artea lekuko, iheslariei etxea eta babesa eskaini zietenak.

GALek ez zuen lortu iheslariak karrikatik ateratzea, baina bai GALen ondorioz Frantziak hartu zuen erabaki politikoa. 1984an hasi ziren deportazioak, 1984an hasi ziren estradizioak gauzatzen. GALen bukaerak berehalako kanporatzeak ekarri zituen. Heriotza arriskuak ez zituen karrikak hustu. Berehalako kanporatzeek, bai. Eta hori ulertzeko arrazoia argi azaltzen zuten iheslariek. «Indarrean jarri zirelarik berehalako kanporaketak Poliziaren esku uzten gintuzten, eta bagenekin torturatuak izan gintezkeela». Torturaren beldurrak etxeko murruetan ixtera behartu zituen, bakoitzaren gogoan karrikara ez ateratzeko agintzen zion jendarmeari tokia eginez. Aldian aldi egiten zituen atxiloketa eta kanporaketak sarekada masibo bihurtu zituen Frantziak.

(Aurreko orrialdetik dator)

Olaskoaga anaietako bat hiltzea eta bestea hiltzen saiatzea ere.

Dirudienez, olaskoagatarrak beste bi pertsonarekin nahastu zituzten. Ez zen *GAL berdearen akats* bakarra izan. Velazquez Sorianoren arabera, 1984ko martxoan hil zuten Jean Pierre Leibarena ere *akatsa* izan zen. Velazquezi Gumersindo Hernandez guardia zibilak esan zion ekintza hori egiteko dirua eta armak Hernandezek berak eta Navascues enpresaburuak eman zizkietela mertzenario ultraeskuindarrei.

Eugenio Gutierrez Salazar *Tigre*-ren hilketa ere *GAL berdearekin* lot daiteke, Pedro Migueliz *Txofo* isilmandatariaren arabera Lasa eta Zabalari ateratako informazioek eman zutelako ekintzarako bidea. *GAL berdearekin* soilik ez, *GAL marroiarekin* ere lot daiteke, frankotiratzaileak hilketarako erabilitako arma CESIDekin zuzenean lot daitekeelako.

Dena dela, Oñederra, Gurmindo-Perurena eta Olaskoagaren kasuak bateratzen zituen auzia 2003an itxi zuen Baltasar Garzonek. Eta, horrela, *GAL berdeak*, Guardi Zibilak, bere kideetako lau soilik ikusi zituen epaitegietan zigortuak —orduko jada jenerala zen Galindo eta haren gizon Vaquero, Dorado eta Bayo— eta haiekin, Elgorriaga gobernadorea; kasu bakarragarengatik, gainera, Lasa eta Zabalarengatik.

Galindoren gainetik, Jose Antonio Saenz de Santamaria jenerala Guardia Zibileko burua eta haren bigarren Andres Casinello jenerala GALen zigiluaren kontuarekin soilik inputatu zituzten, eta zigortu ez. GALen ekintzen zerrendatik zeintzuk gehiago izan ziren *GAL berdearenak*? Ezin jakin, estaturen estoldetan galtzen baitira informazio gehienak.

## ‘GAL urdina’

*GAL berdearekin* ia aldi berean jaio zen *GAL urdina* edo Poliziarena. 1995eko apirileko auto batean Baltasar Garzonek aipatzen duenez, berak hasieran *GAL zuria* deitzen ziona Donostiako Londres hotelean sortu zen, 1983ko irailaren 24an. Gerora ere, data horiei buruz hitz egiten du Garzonek, GALen sorrera leporatzen dienean orduko Bizkaiko gobernadore zibil Julian Sancristobal, Bizkaiko PSE-EEko buru Garcia Danborenea, Bilboko poliziaburu Francisco Alvarez eta Informazio brigadako buru Miguel Planchuelori.

Auzipetuta zeudela, laurek aipatuko zituzten gainetik zeudenak, hots, Rafael Vera Estatu idazkaria eta Jose Barrionuevo ministroa. Baina, argitasun bila, behera joan behar da, Alvarez eta Planchueloren gizonengana, Jose Amedo, Michel Dominguez, Julio Hierro eta Francisco Saiz poliziengana.

CESIDeko paperetatik uler daitekeenez, «egitear zeuden ekintzei» buruz Manglanok jasotako mezua irakurrita, Jose Maria Larretxearen bahiketa saioa izan zen *GAL urdinaren* lehen ekintza, polizia komisario batek eta hiru GEOk egindakoa, hain zuzen, *GAL berdearen* lehen ekintza (Lasa eta Zabala) gertatu eta bi egunera.

*GAL urdinaren* ezaugarrietako bat mertzenarioen erabilera izan zen; mertzenario frantses, portugaldar eta espainiarrak erabili zituzten mugaz iparraldeko lanak egiteko, eta Espainiako Polizia mugaz hegoaldekoez arduratzen zen.

Mertzenario haietako batzuekin batera, Amedo eta Dominguez izan ziren *GAL urdinaren* katea askatzeko giltza nagusiak. Consolation tabernan egindako erasoan (1986ko otsaila), momentuan harrapatu zuten Paulo Fontes Figueiredo mertzenario portugaldarra, eta hark eman zuen Amedoren izena. Eta Auzitegi Nazionala hura eta Michel Dominguez ikertzen hasi zen.

## ‘Marey auzia’

Batxoki eta Consolationeko ekintzengatik Amedok eta Dominguezek 108 urteko kartzela zigorra jaso aurretik, Frantzian Jean Pierre Echalier eta Mohand Talbi epaitzen ari ziren Segundo Mareyren bahiketarengatik, eta jada haiek aipatu zuten Pepe polizia espainiarra (Amedo).

Espainian, *Marey kasua* abian bazen ere, bultzada handiena 1994ko amaieran hartuko zuen, Amedo eta Dominguez hitz egiten hasi zirenean —kartzelan uste baino denbora gehiago egiten ari zirela—. Euren goikoak inplikatu zituzten, eta haiek —Sancristobal, Garcia Danborenea, Francisco Alvarez eta Miguel Planchuelok—, lehen esan bezala, Vera eta Barrionuevorengana zuzendu zuten hatza, zenbaitek Felipe Gonzalez ere aipatu zutela.

Gainera, Mareyren bahiketak (1983ko abendua) betetzen zituen GALen sortze agiria delakoan ekintzei buruz agertzen ziren hainbat ezaugarri: «Bahiketa bidez desagerrarazteko» asmoz egin zuten hasiera batean, baina, okerreko pertsona bahitu zutenez, hura hiltzea ez zen komeni.

1996ko maiatzean, jada Auzitegi Gorenean zegoen *Marey auzia*, eta Eduardo Moner epaileak Felipe Gonzalez ez auzipetzea erabaki zuen. Bi hilabete lehenago utzi zion Gonzalezek Espainiako presidente izateari, PPk hauteskundeak irabazi ostean.

1998ko uztailean emango zuen *Marey auziaren* epaia Auzitegi Gorenak. Amedo, Dominguez eta mertzenarioek jasotakoetatik aparte, hura izango zen *GAL urdina* zigortzen zuen epai bakarra. Jose Barrionuevo ministroari eta Rafael Vera Estatu idazkariari hamarna urteko kartzela zigorra ezarri zieten, baita Julian Sancristobali ere. Baina, ezbairik gabe, Barrionuevo eta Vera ikur garrantzitsuak ziren, eta horren erakusgarri Espainiako Alderdi Sozialistako hainbat kargudunek, Gonzalezek barne, haiek kartzelara sartzea babestu izana.

Irailean kartzelan sartu, eta abendurako kalean ziren, Espainiako Gobernuaren indultu partzial bati esker. Gero, 2001ean, Konstituzionalak haien helegiteak baztertu eta emandako epaiarekin berriz ere kartzelara sartu zituzten, baina hamar bat ordurako soilik, berehala eman zitzaielako hirugarren gradua.

*GAL berdeak* mertzenarioak erabili zituen ez dago argitzerik. Eta hainbat ekintza *GAL urdinaren* eta haren mertzenarioen lanak izan zirenik ere ezin da baieztatu. Zenbait mertzenariori kartzela zigorra ezarri zieten, bizi osorakoa batzuetan Frantzian. Egun, Ismael Miquel (Espainian) eta Jean Philippe Labade (Frantzian) dira kartzelan jarraitzen duten GALeko mertzenario bakarrak.

Non kokatu GALen ekintzen artean osotara Hego Euskal Herrian egin zen hilketa bakarra, Santi Brouardena? 1984ko azaroan gertatutakoa oraindik auzibidean dago. Bi hiltzaileetako bakarra izan zen kondenatua: Rafael Lopez Ocaña mertzenarioa, Juan

> CESID: «Ekiteko modu gomendagarriena bahiketa bidezko desagerraraztea da»

> Galindo: «Frantziara pasatzea da kontua. Pasatu eta han egin hemen egiten duguna»

Jose Rodriguez Diaz *El Francés* arma trafikatzailearekin batera —hark eman zizkien armak—.

Bigarren epaiketan, Amedo, Rafael Masa guardia zibil ohia eta Luis Morcillo ere auzipetu zituzten. Lopez Ocañaren arabera, Morcillo zen Brouard hil zuen beste mertzenarioa. Baina Morcillo, Masa eta Amedo absolbitu egin zituen Bizkaiko Auzitegiak. Aurten, hirugarren aldiz zabaldu da auzia, Morcillok bere burua Brouarden hiltzailetzat aurkezten zuen ustezko grabazio batzuk agertu ondoren. Hala ere, berriz itxi da auzipetzerik gabe, nahiz eta azken erabaki horri helegitea jarria zaion.

Erabat itxi gabe dago GALen azkentzat jotzen den ekintza ere, Juan Carlos Garcia Goenaren 1987ko uztaileko hilketa. Lohi artean nonahi eta uneoro agertzen diren Amedo eta Dominguez auzipetu zituen Garzonek Garcia Goenaren hilketagatik, baina absolbituak izan ziren. Aurretik, Auzitegi Nazionalak uko egin zion haien buruzagiak auzipetzeari.

## Amaiera

Ekintza horretan deigarria da aurreko ekintzatik, Christophe Matxikote eta Catherine Brionen hilketatik, urte eta lau hilabete pasa zirela. *Amedo: El estado contra ETA* liburuan Melchor Miralles eta Ricardo Arquesek dioetenez, haritik tiraka haiengana iristen ari zen prentsaren presioa zuten gainean Amedok eta Dominguezek, baita atxilotutako lehen mertzenarioen akusazioak ere. Eta uste zuten goikoek bazterrean utzi zituztela, GALen sorrera eurei leporatuta.

Beraz, Matxikote eta Brionenak izan behar zuen, berez, GALen azken ekintza; 1986ko otsailaren 17an hil zituen biak GALek, Bidarraiko errepide batean. Egun gutxi, 11 igaro ziren Baionako Auzitegian ustezko lau ETAkideren kontrako auzia abiatu zenean. Frantzia, erabateko presazko prozeduraz, iheslariak Espainiaratzen ere hasi zen.

Frantziak errefuxiatuei ematen zien babesaz Felipe Gonzalezek 1983ko azaroan Espainiako Kongresuan azaldutako asmoak bete ziren: «Borondate irmoa dugu egoera paradoxiko hau amaitzeko», esan zuen Gonzalezek, gerra zikinaz eztabaida inplizitua zabalduz Kongresuan.

Euskadiko Ezkerrako diputatu Juan Maria Bandresek erantzun zion: «Ez zaitezte erori, eta espero dut ez zaretela eroriko gerra zikinaren tentazioan; ilegaltasuna gaizkileen jabetza da. Estatu demokratikoa beste muga batzuen barruan mugitzen da; eta muga horiek ez dira gainditu behar, errespetatu egin behar dira». Zikin artean ikusten da batzuek gainditu zituztela mugak.



Christophe Matxikoteren gorpua, auto barruan. Bidarrai, 1986ko otsailaren 17a. DANIEL VELEZ



**Antonio Rubio**

Kazetaria

«Kazetarien ikerketak Poliziaren aurretik joan ziren»

«Ebidentziak dio prentsa iritsi zen lekura ez zela poliziarik iritsi. Baina zer da polizia? Nagusiak dituen gizon bat, antolaketa politiko pean...». «Argitaratu den guztiarena baino puzzle osatuago bat daukagu guk. Baina kazetariak aurkeztu behar duenak izan behar du epai batean ‘frogatutako gertaeren’ modukoa».

Urriaren 10ean, elkarrizketa osoa.
www.berria.info/GAL

# Estoldetan mamitutako estrategia

## Iheslariak kriminalizatzea eta Frantzia haiek kanporatzeko presionatzea izan ziren GALen jardueraren helburu nagusiak. Biak lortu zituen, baina baita nahigabeko ondorio bat ere.


1986ko abuztua. Koldo Dobaran erabateko presazko prozeduraz Espainiaratua izan zen. DANIEL VELEZ

**Iñaki Petxarroman**

1986an bi gertakarik eraman zituzten GAL sortu eta antolatu zuten Espainiako Estatuko aparatuko buruak helburuak beteta zeudela egiaztatzera. Iritsi zen unea izua gelditzeko. Gerra, nolabait esatearren, irabazita zegoen. Frantziako Justiziak bost urteko zigorra ezarri zien euskal iheslarien kolektiboko lau kideri —Isidro Garalde *Mamarru,* Juantxo Lasa Mitxelena *Txikierdi,* Agustin Bergaretxe eta Juan Ramon Martinez de la Fuente *Txori*— gaizkile taldeko kide izateagatik. Lehen aldiz epaitu eta zigortu zituzten euskal iheslariak. Horrekin batera, ordura arte erabili gabeko formula bat ezarri zien Frantziako Poliziak iheslariei: erabateko presazko prozeduraz Espainiako Poliziaren esku uzten hasi ziren.

Bukatu zen *santutegia*. Espainiako Poliziaren begitan iheslariek ordura arte Iparraldean bizi izan zuten babes egoera jasangaitza puskatua zen betiko. GALen helburuak beteta zeuden. Francisco Letamendia *Ortzi* EHUko irakasle eta politikari ohiaren arabera, bi izan ziren 1983an Espainiako Estatuko egiturak GAL sortzera eraman zituzten helburu nagusiak: batetik, errefuxiatu estatutua galtzeko xedez, euskal iheslariak kriminalizatzea; eta, bestetik, tentsioa sortzea Ipar Euskal Herrian, Frantziak ulertzeko normaltasuna berreskuratzeko beharrezkoa izango zuela iheslariak kanporatzea. «Bi helburu horien inguruan badago nahiko adostasun bai ezker abertzaleak, EAJk eta Espainiako prentsak egiten zuten analisien artean». Baina *Ortzi*-k beste helburu bat ere azpimarratu du, Juan Alberto Perote Espainiako zerbitzu sekretuetako koronelak behin esandakoa aintzat hartuta: «Gobernuak baretu egin nahi zuen Polizietan, Guardia Zibilean eta armadan zegoen tentsioa. Nola? Hiltzeko baimena emanez. Horrela lortuko zuten 1981eko otsailaren 23koaren moduko estatu kolpeetatik aldentzea».

1982tik etengabe joan zen okertzen euskal iheslarien egoera Ipar Euskal Herrian, François Mitterrand presidente sozialista boterera iristearekin batera. 1984ko urtarrilaren hasieran sarekada erraldoi bat jarri zuen martxan Frantziako Poliziak, ehun etxebizitza baino gehiago miatu, dozenaka lagun atxilotu eta hamar lagun deportatuta. Urte berean Frantziako Senatuak ohartarazi zuen euskal iheslariak desegonkortasun iturri bat zirela. Urte horretako irailean Frantziako Kasazio Auzitegiak hiru iheslariren extradizioa eta lau deportazio ontzat jo zituen, ordura arte Ipar Euskal Herrira iristen ziren ETAko kideek jasotzen zuten iheslari estatutua bertan behera utzita.

Frantziako iritzi publikoa aldatzen ari zen. Libanoko eta Ekialde Hurbileko gatazkaren ondorioz, hainbat atentatu izan ziren Frantzian —haietako batzuk oso larriak—, eta horrek psikosi moduko bat sortu zuen «terrorismoarekiko», Letamendiak berak gogoratu duenez. Giro horretan, iheslarien babesa gero eta zailagoa zen. Lehen berehalako kanporatzeak hasi bitartean 33 euskal herritar deportatu zituen Frantziak, hiru extraditatu, 56 iheslariri derrigorrezko egoitza ezarri zien eta beste 70 laguni hainbat departamentutan egoteko debekua ezarri zien.

Letamendiak gogoratu du Espainiaren egoera ere aldatzen ari zela nazioarteko eta Europako testuinguruan. Europako Ekonomia Erkidegoan (EEE) sartu zen, eta hainbat arlotan Frantziaren eta Espainiaren interesek talka egiten zuten, ardogintzan, arrantzan eta beste hainbat kontutan. Euskal iheslariak truke txanpon bilakatu ziren bi gobernuen arteko negoziazioetan.

### Frantziaren esku hartzea

Zenbateraino zegoen sartuta Frantziako Gobernua GALen? Iñaki Esnaola HBko bozeramaile eta abokatuaren arabera —garai hartan zuzenean lan egiten zuen Esnaolak Ipar Euskal Herriko iheslariekin—, bi estatuak zeuden gai honetan sartuta, Frantziaren kasuan ez ekintzak prestatzen, bistan denez, baina bai ezikusiarena egiten: «Estatu ekintzetan, zuzenean edo zeharka, bere elementu guztiek parte hartzen dute. Garai hartan, PSOEk eta bere gobernuak parte hartu behar zuten, beraiek baitziren Espainiako Estatua zuzentzen zutenak. Gainera, europar sistemari oro har kalte egiten zion gai bat zenez, Frantziak ere parte hartu zuen, arazoa bukatzea interesatzen zitzaiolako». Azken finean, Esnaolak uste du Espainiak eta Frantziak «ekintza politiko-militar bat» osatu zutela, eta haren besoak alderdi politikoak, Eusko Jaurlaritza, bi estatuak eta GAL izan ziren.

Frantziako hainbat epaile harietatik ez tiratzeaz gain, GALekin kolaboratzeko zantzuak zituzten pertsonak kargurik gabe uzten aritu ziren garai hartan. Alabaina, 1984ko bukaeran GALen atentatuen bigarren fasea hasi zela esan du Letamendiak, aurrekoa baino are «gogor eta krudelagoa». Orduan, euskal gatazkarekin zerikusirik ez zuten Frantziako herritarrak kolpatzeari ekin zion GALek. Helburu garbi batekin, Letamendiaren arabera: Frantziaren gaineko presioa handitzea, iheslariak kanporatzea beste biderik ez uzteraino.

Berehalako kanporatzeak sistematikoki ezartzearekin batera, ordura arteko dinamika aldatu egin zen: ETAren atentatuari GALen atentatu batek erantzun beharrean, Frantziako Poliziaren operazio eta kanporatze bat hasi zitzaion erantzuten, Letamendiak gogoratu duenez. Hor hirugarren fasearen hasiera ikusten du EHUko irakasleak, Jose Amedo eta Michel Dominguez GALeko kideak auzitegietara bidean jarri zituena.

1980ko hamarkadaren amaieran 108 urteko espetxe zigorra ezarri zieten, eta Espainiako Gobernuak diru asko eman zien bere senideei ahoa itxita edukitzeko. 1990eko hamarkadan, berriz, PP gobernura hurbiltzera zihoala ikusita, eta alderdi horren promesak jasota —espetxetik berehala irtengo zirela, adibidez— *El Mundo*-ri elkarrizketak eman zizkioten Jose Barrionuevo Barne ministroaren talde osoa GALekin nahastuz.

### Zoru etikoa

GALek lortu zituen bere helburuak: Frantziak euskal iheslariak kanporatzeari ekin zion, eta ETArekin zerikusia izateagatik Ipar Euskal Herrira jotzen zuten militante politikoek ezkutatu behar izan zuten atxilotu ez zitzaten. Baina, hala ere, bestelako ondoriorik ere izan zuen, Letamendiak nabarmendu duenez: «Zuzenbide estatua erabat zikinduta geratu zen, krudeltasun handiko jardueraren ondorioz, eta horrek oraindik ere itzal luzea uzten du gaur egun hainbeste aipatzen den zoru etikoaren eztabaida horretan».

Iñaki Esnaolaren arabera, GAL estatu gaia izan zen, ETA amaitzera zuzendua. Horretan Espainiako Estatuak eta PSOEk parte hartu zuten. «Bestalde, eta, ia aldi berean, EAJ-PSOEren arteko akordioak Euskal Autonomia Erkidegoan zeuden gainontzeko alderdi politikoekin batzera eraman zituen, ezker abertzalea isolatzeko helburu bakarrarekin. GALek alde batetik eta frantziarren ekintzak beste aldetik, erakunde armatua bukatu nahi zuen». Laster bideratu ziren ETAren eta gobernuaren arteko elkarrizketa politikoak ere —Arjelgo saioaren porrotarekin amaitu ziren— erakunde armatua amaitzeko norabide horretan ikusten ditu Esnaolak.

GALek eduki zuen beste ondoriorik ere: Felipe Gonzalezen edo *felipismoaren* aroaren amaiera. Horretan PPk zukutu zuen GAL, bere aldeko interesetarako. PSOE gerra zikinarekin lotzen zuen haria bistaratu zuen *El Mundo* egunkariaren bidez, eta, Letamendiaren arabera, hitzarmen batera iritsi zen Gonzalezekin: «Bere aurkako zantzuak ez agertzea eskaini zioten, betiere politika uztearen truke».



**Jose Felix Azurmendi**
'Egin'-eko zuzendari ohia

«Gonzalez da arduraduna, baina ezin da frogatu»

«Sozialistek ez zuten konplexurik. Felipe Gonzalezek esaten zuen 'A mi los militares no me dan otro golpe' (niri militarrek ez didate beste kolpe bat egingo). ETAren ekintzek estatua kolokan jarri zuten, eta Gonzalez edozer egiteko prest zegoen militarrak baretzeko».

Urriaren 10ean, elkarrizketa osoa. www.berria.info/GAL

# Gerra zikinak etendako bizitzak

Lasa eta Zabala gazteen bahiketarekin hasi zuen GALek bere ibilbidea, eta, orotara, 27 lagun hil zituen ia lau urtean.

Ainhoa Sarasola

Tolosako bi gazteren bahiketarekin hasi zuen GALek bere ibilbidea, eta Tolosako beste gazte baten hilketarekin amaitu. 1983ko urriaren 16an bahitu zituzten Joxean Lasa eta Joxi Zabala errefuxiatu gazteak —ondoren torturatu eta hiltzeko—, eta 1987ko uztailaren 24an hil zuen Juan Carlos Garcia Goena, ofizialki GALen azken biktimatzat jotzen dena, haren autoan lehergailu bat jarrita. Ia lau urtean, beste 24 lagun hil eta dozenaka zauritu zituen, tiroz nahiz lehergailuz, eta izua zabaldu zuen Ipar Euskal Herrian bizi ziren iheslarien artean.

Hasieratik ETAko kideak eta errefuxiatuak hartu zituen jomuga. Haietariko batzuk xede zehatz hartu, eta haien aurka atentatu zuzenak egin zituen. Beste kasu batzuetan, berriz, ezker abertzalearen inguruko lagunak izan zituen jomuga. Izan zen atentatu indiskriminaturik ere, errefuxiatuak ibili ohi ziren tabernen aurkako ametrailatzeak, esaterako, eta inguru abertzaleekin loturarik ez zuten zenbait lagun ere hil zituen. GALek berak onartu izan zuen hainbat lagun hil izana *okerra* izan zela; indiskriminazioz aritzeko erabakiaren atzean, ordea, Frantziako Gobernuari presio egiteko asmoa ikusten dute batzuek.

Ostegunetik aurrera, soslai guztiak luze irakurri ahal izango dira BERRIAren webgune berezian.



### Joxean Lasa Arostegi

▪ Tolosako Olarrain auzoko Aldaba-Txiki baserrian jaio zen, 1963ko martxoaren 21ean. Tolosako banketxe baten lapurreta saioaren ondotik, sasira jo zuen Joxi Zabala lagunarekin. Baionako kaleetan Polizia zelatan izaten zela jakin arren, ez zuten espero 1983ko urriaren 15ean jazoko zena. Egun hartan bahitu zuten, Zabalarekin batera, ondoren biak torturatu eta tiroz hiltzeko.



### Joxi Zabala Artano

▪ 1962ko urtarrilaren 5ean jaio zen Joxi Zabala,Tolosako Olarrain auzoan, eta sei senideetatik bigarrena zen . Izaera irekikoa, jendezalea eta «saltsa guztietako perrexila» zela diote etxekoek, eta eskulanetan aritzea, musika eta mendia zituela zaletasun. Lasa lagun minarekin batera erbesteratu zen. Biak desagertu eta 12 urtera izan zuten senideek gazteei jazotakoaren berri.



### Ramon Oñederra Bergara 'Kattu'

▪ Gau batez bidezorroa prestatzen ikusi zuen aitak, eta zertan ari zen galdetzean, besarkatu eta «aita, dena Euskadigatik» esan zion Ramon Oñederra *Kattu*-k. 1960ko martxoaren 28an Azkoitian jaioa, 19 urterekin erbesteratu zen. Lasa eta Zabala ikusi zituen azkena izan zen, eta ingurukoei «hurrengoa ni izango nauk» esan zien. Aste gutxira hil zuten.



### Mikel Goikoetxea Elorriaga 'Txapela'

▪ Derion jaioa, 1956ko uztailaren 3an. Gazterik Guardia Zibilak haren anaia Jon Ugutz hil izanak mingarriki hunkitu zuen. Ipar Euskal Herrira bizitzera joan, eta berehala atxilotu zuten, gero libre uzteko. Poliziarentzat «obsesio bat» izan zen, Jose Amedok behin aitortu zuenez. Izaskun Ugarte bikotekidearekin eta Haize alabarekin zela hil zuten, tiroz.



### Angel Gurmindo Lizarraga 'Stein'

▪ 1950eko abenduaren 17an Olatzagutian sortua. Bi arreben neba, 12 urterekin hasi zen lanean Olatzagutiko harrobian. Langilea eta ikasle ona, parrandazalea eta ehiztari porrokatu gisa ere gogoratzen dute. 1975an egin zuen ihes. Baionan preso eta Yeuko uhartean konfinatua egon zen. Bixente Perurenarekin hil zuten, 1984ko otsailaren 8an.



### Bixente Perurena Telletxea 'Peru'

▪ 1946an Oiartzungo Altzibar auzoko baserri batean jaioa. Bost anai-arrebetan laugarrena; adi entzuten omen zituen sutondoan aitak 36ko gerraz kontatzen zizkienak. Bizikletan ibiltzea zuen zaletasun, Txomin anaiarekin batera. 1981ean ihes egin, eta hiru urte eman zituen Lapurdin, emaztearekin eta hiru alabekin. Hendaian hil zuten, *Stein*-ekin batera.



### Eugenio Gutierrez Salazar 'Tigre'

▪ 1955eko urtarrilaren 14an jaio zen Leioako langile auzo batean; hiru senidetan gazteena. Borroka sozialarekiko sentsibilitate berezia zuen gaztetatik, eta lanean hasi orduko murgildu zen langile borrokan. 1983an ihes egin zuen, eta Donibane Garazin bizi izan zen errefuxiatuta. Urtea egin baino lehen hil zuten, Idauze-Mendin euskara ikasten ari zela.



### Jean Pierre Leiba

▪ Hendaiarra, Sokoa eta Hendaiako tren geltokiko langilea zen, eta errefuxiatu ugari zituen lankide. 1984ko martxoaren 1ean tiroz hil zuten, 28 urterekin. Haren hilketa egotzita espetxeratutako hiru lagunetako bat, Daniel Fernandez, lankide zuen; hark Frantziako Poliziari esan zionez, lankide errefuxiatuen aurka atentatua egiteko asmoen berri izan zuen, eta salatu ez zezan hil zuten.



### Xabier Perez de Arenaza Sogorb

▪ Arrasatear zuen bere burua, sortzez Aretxabaletakoa izan arren. 1949ko urriaren 21ean jaioa, 11 neba-arrebetatik zaharrena zen. Euskaltzale amorratua, jendea «erakartzeko» dohaina zuen, etxekoek diotenez. Gazterik piztu zitzaion kontzientzia soziala. 1982an atxilotu zuten, eta aske geratu ostean, Miarritzen errefuxiatu zen. 34 urterekin hil zuten.



### Rafael Goikoetxea Errazkin

■ Hernaniko Zinkuñaga auzoan jaio zen, 1954ko urtarrilaren 19an, paper fabrikak langileentzat eraikitako etxeetan. Han hasi zen lanean aitarekin, baina arrantzale eta kamioilari ere ibili zen. BVEek bere bi lagun hil zituela jakiteak jota utzi zuen gaztea. Polizia segika zuela jabetuta, 1981ean erbesteratu zen. Arrosako Denek altzari enpresan zebilen lanean hil zutenean. Lantokitik ateratzean tirokatu zuten, motor batetik.



### Tomas Perez Revilla 'Tomason'

■ Bilbon jaio zen 1937ko abenduaren 17an, eta haurtzaro gogorra izan zuen; preso zuen aitaren heriotza bizi izan zuen hiru urterekin. 60ko urteetan hasi zen garai hartako giro politikoan murgiltzen. 1971n erbesteratu zen. Ezagutu zutenen arabera, militante «zuzena, zuhurra eta hotza» zen, baina samurra izaten ere bazekien. 1976an BVE hura hiltzen saiatu zen, lortu gabe. GALek hilko zuen, 46 urte zituela.

### Christian Olaskoaga

■ Ziburun jaio zen, eta dantza zuen zaletasun nagusi Christian Olaskoagak —hamar urtez aritu zen dantza talde batean—. Claude anaiarekin batera, Biriatuko festetara joana zen, eta aparkaleku batean zirela, bi kaputxadun hurbildu eta tiro egin zieten bi anaiei, 1984ko azaroaren 18an. Bihotzean zaurituta hil zuten Chistian, 22 urte zituela; Claude anaia, berriz, hanka batean zauritu zuten, baina ihes egitea lortu zuen. Jean Batit haien aita udal aholkularia zen Ziburun, eta pertsona ezaguna zen.



### Santi Brouard Perez

■ Lekeition 1919an jaioa, txikitan bi arreba hil izanak bideratu zuen medikuntzara, eta, «oso umezalea» izanik, pediatra egin zen. Abertzale eta sozialista, HASIko buru izan zen, baita HBko ordezkari ere hainbat erakundetan. Baina mediku lana ez zuen sekula utzi; Bilboko kontsultan hil zuten, tiroz. Haren hilketa salatzeko batu zen jendetzak berresten ditu etxekoen hitzak: «Oso maitatua zen».

### Benoit Pecastaing

■ 1985eko martxoaren 29an hil zuten Benoit Pecastaing ikasle angeluarra. Baiona Ttipiko Cafe des Pyrenees tabernaren aurkako erasoa egin zuten egun hartan, 20:30ak inguru zirela. Errefuxiatu ugari biltzen zen taberna hartan, eta ostirala izanik, ohi baino jende gehiago zebilen. Tirokatu egin zuten taberna, eta bertan hil zen Pecastaing, 21 urte zituela. Jean Marc Mutio, Jean Jacques Hum eta Kepa Pikabea zauritu zituzten eraso berean.



### Xabier Galdeano Arana

■ Bilbon 1934an jaioa, ongi kokatutako familia batean. Ikastolen alde lan egin zuen, baita *Egin* egunkaria sortzeko ere, familiaren enpresa utzi eta bertan lanean buru-belarri jarduteraino. Poliziak hainbatetan atxilotu ostean erbesteratu zen, eta *Egin* Ipar Euskal Herriko txoko guztietara iris zedin jarraitu zuen lanean. Donibane Lohizunen hil zuten, etxeko atarian, tiroz, 50 urte zituela.

### Emile Weiss

■ Pauen jaioa zela, 25 urte inguru izango zituela eta hiru seme-alaba zituela, xehetasun askoz gehiagorik ez zen zabaldu Emile Weissi buruz GALek hil zuenean. Buhamea zen, eta bezperan Sokoara joana zen Claude Doerrekin batera, beste ijito familia batzuekin aste batzuk pasatzera. Biak Ziburuko Trinket Txiki tabernan zeuden 1985eko ekainaren 14 hartan, gizonez mozorrotutako emakume batek taberna metrailetaz tirokatu eta biak hil zituenean.

### Claude Doerr

■ Pauen jaioa, hiru seme-alaba eta 28 urte inguru zituen Doerrek hil zutenean. Weissekin batera, bezperan iritsia zen Ziburura, Sokoako beste ijito fami lia batzuekin hainbat aste igarotzeko asmoz. Trinket Txiki tabernan GALeko mertzenario batek metrailetaz egindako erasoan tiroz zauritu eta bertan hil zen. Taberna hartan errefuxiatu ugari biltzen zen, eta orduan zabaldu zen informazioaren arabera, litekeena zen bi buhameak errefuxiatuekin nahastu izana.



### Santos Blanco Gonzalez 'Aitite'

■ Donostiako Intxaurrondo auzoan sortu zen, 1933an; gaztetatik oso konprometitua egon zen herrigintzarekin eta langile borrokarekin. 46 urterekin erbesteratu zen, eta errefuxiatuen artean zaharrenetarikoa izanik, «askorentzat aita moduko bat zen, oso maitatua», harekin izan zirenen arabera. Baionan hil zuten, tiroz, 1985eko ekainaren 27an.



### Juan Mari Otegi Elizegi 'Txato'

■ «Zorrotza», halakoxea zen Juan Mari Otegi itsasondoarra ezagutu zutenen hitzetan. Beitia baserrian jaio zen, 1942an, 11 senideko familia batean. Gazte konprometitua zen, eta beti ateratzen zuen denbora euskararen alde aritzeko. 1976an ihes egin zuen Iparraldera. Haren alaitasuna dute gogoan harekin egon zirenek. 43 urterekin hil zuten, tiroz, Donibane Garaziko errepide batean.



### Joxe Mari Etxaniz Maiztegi 'Potros'

■ Urretxun jaio zen, 1954an. 21 urterekin erbesteratu zen, eta hamaika bizitoki eta lanbide izan zituen Ipar Euskal Herrian. Atabala jotzea eta pilota oso gogoko zituen, baita Realaz edo bertsolaritzaz mintzatzea ere. 1984ko abenduan Mendiondon atxilotu eta hilabete batzuk preso eman zituen. Ez zen epaiketara bizirik iritsi; Monbar hotelean hil zuten.



### Inaxio Asteasuinzarra Pagola 'Beltza'

■ Hernanin jaio zen, 1950eko uztailaren 30ean. Baserri giroan hazi zen bere bi anaiekin, giro euskaldunean. Euskararen egoera larriak piztu zion kontzientzia. 21 urterekin bihurtu zen errefuxiatu, eta beste asko emango zituen horrela, harik eta 1985eko irailaren 25ean Monbar hoteleko kafetegian hil zuten arte, beste hiru errefuxiaturekin batera.



### Agustin Irazustabarrena Urruzola 'Legra'

■ 1952an Astigarragako Guardi baserrian jaioa, herriko eskolan piper gehien egiten zuenetakoa ei zen. Goiz hasi zen lanean, eta azkar piztu zitzaion langile kontzientzia. 1982an ihes egin zuen Lapurdira. Hiru urtera, semea jaio zitzaion, eta handik hiru hilabetera lortu zuen errefuxiatu politiko agiria. Ospatzera joan zirelarik hil zuten, Monbar hoteleko tabernan.



### Xabin Etxaide Ibarguren 'Eskumotza'

■ 1957an Zestoan jaioa. Lau anai-arrebatan zaharrena; ume mugitua izan zen, eta lagunak asko eta onak izan zituen gaztaroan. Delineante ikasketak egin zituen Zumarragan, eta han sartu zitzaion politikaren harra. 1979an atxilotu eta bederatzi hilabete preso egin ostean, erbestera jo zuen. 1985eko irailaren 25ean hil zuten, Monbar hotelean.



### Robert Caplanne

■ Argiketaria lanbidez, bananduta zegoen, eta 14 urteko alaba bat zuen. Haren gurasoek La Croix taberna zuten Miarritzen, errefuxiatu askoren bilgune zena, eta goizero joaten zen hara edo Royal tabernara. Hain zuzen, Caplanne errefuxiatu batekin nahastuta hil zutela uste da. Royal tabernatik atera berri, bi gizonek tiro egin zioten, eta 1986ko urtarrilaren 6an hil zen, 38 urte zituela.

### Christophe Matxikote

■ Itsasun jaioa, baserritarra zen Matxikote, eta Ameriketara joan zen gaztaroan. Han, baina, ez zuen zorte handirik izan, eta jaioterrira itzultzea erabaki zuen, bere jabetzez arduratzeko. Alarguna zen, eta seme-alabak zituen. Bidarraiko baserrirainoko bidea egiten zuen egunero, hango artaldea zaintzeko. Euskal iheslari bat zuen bizilagun, eta garai hartan esan zen litekeena zela harekin nahastuta hil izana. 60 urte zituen hil zutenean, 1986ko otsailaren 17an.

### Catherine Brion

■ Parisen jaioa zela eta 16 urte zituela, haren bizitzari buruzko datu askoz gehiagorik ez zen zabaldu Catherine Brion hil zutenean. Batxilergo ikasketak aurrera ateratzeko buru-belarri zebilen gaztea garai hartan. Landa eremua gustuko zuen, eta baserri batean bizi nahi omen zuen. 16 urte baino ez zituen orduan. 1986ko otsailaren 17an Matxikoterekin batera hil zuten, haren autoan zihoala, ustez gurasoekin oporrak igarotzen ari zen karabanara.



### Juan Carlos Garcia Goena

■ 1959an Tolosan sortua, hiru senidetan zaharrena zen. Txikitatik ezinezkoa ei zen bera menderatzea, eta 14 urterekin eskolatik atera eta lanean jarri zuen aitak. Soldaduska egiten sei egun iraun zuen; ihes egin, eta Hendaian jarri zen bizitzen bikotekidearekin. Ez zen ohiko errefuxiatua, ideia politiko argirik ez zitzaion ezagutzen. Autoan bonba bat jarrita hil zuten, 1987ko uztailaren 24an.


JON HERNAEZ / ARGAZKI PRESS

# Txema Montero

## «Hilko naiz pentsatuz: 'Dena argi dago, baina errudunak ez dituzte zigortu'»

*'Brouard auzian' familiaren akusazioa eraman duen abokatuak uste du GALek «bitariko egitura» erabili zuela: alde batetik, «politikari sozialistak», eta, beste aldetik, «horien konfiantzazkoak zirenak» estatuaren segurtasun aparatuetan.*

**Gotzon Hermosilla**

Gutxik dakizkite GALen barrenak Txema Montero abokatuak bezain ondo (Bilbo, 1954). *Brouard auzian* eta beste zenbaitetan izandako parte hartzeak «informazioa erakartzen duen iman moduko bat» bilakatu duela dio, eta horrek datu ugari ezagutzeko aukera eman dio.

**G Zure ustez, nork eta zergatik erabaki zuen Santiago Brouard hiltzea 1984ko azaroan?**

**E** *La Gaceta del Norte* egunkaria berriro ireki zuteneko ekitalditik bueltan gentozen Brouard eta biok [hura hil baino egun batzuk lehenago], eta adierazi zidan nahiko inpresio txarra atera zuela Frantziak Madrilen zuen enbaxadan izandako bilera batetik. Enbaxadorea [Pierre] Guidoni zen, PSFkoa eta Espainiako Alderdi Sozialistatik gertukoa; hau da, Miterranden gizona zen, eta Felipe Gonzalezengandik oso hurbil zegoen. Uste dut bilera hartan Jokin Gorostidi eta bera [Brouard] egon zirela. Guidonik esan omen zien ETA konbentzitu behar zutela behetik negoziatzeko, edo, bestela, egoera asko gogortuko zen. Brouardek mehatxu sotil bat ikusi uste zuen adierazpen horietan. Nik uste dut arrazoi asko nahastu zirela. Hasteko, Espainiako Alderdi Sozialistaren sektore batzuen mendekua, Enrique Casasen hilketa zela-eta, aurreko martxoan. Inputatu batzuek hala adierazi zuten, bai eta azaroaren 20a baino lehen atentatua egiteko saio batzuk egon zirela ere, eta zenbait arrazoi zirela medio atentatua egiteko aukera baztertu zutela. Bigarrenik, uste dut bazegoela lasterketa moduko bat *GAL berde* eta *GAL urdin* deiturikoen artean, hots, Guardia Zibilarekin eta Poliziarekin lotutako adarren artean, arduradunen aurrean merituak egiteko.

**G Zertan oinarritzen zara hori esateko?**

**E** Hau guztia Estatuaren Segurtasunaren Zuzendaritzak koordinatuta zegoen. Ez zen kasualitatea hango arduraduna Julian Sancristobal izatea, eta han bere menpean edukitzea alde batetik Bilboko Poliziaren nagusi izandakoa, [Francisco] Alvarez, Polizian *Galvarez* ezizenaz ezaguna, eta, beste aldetik, La Salveko komandantzian Guardia Zibilaren informazio zerbitzuen arduradun izandakoa, [Rafael] Masa kapitaina. Sancristobal segurtasun zuzendari izendatu zutenean, biak hartu zituen, eta Madrilera eraman zituen bere taldean. Argi dago Estatuaren Segurtasunaren



zuendaria Guardia Zibilarekin koordinatzen zela Guardia Zibilaren zuzendariaren bidez, eta Poliziarekin hango zuzendariaren bidez, baina horiek ez ziren Alvarez eta Masa; beraz, pentsatzekoa da ohiko aginte katetik kanpo Alvarez eta Masa beste gauza batzuk, beharbada ez hain aitorgarriak, koordinatzeko zeudela. Merituak egin nahi horrek garrantzi handia izan zuen, eta *Brouard auziaren* sumarioan agertzen da nola Morcillok eta haren mertzenario taldeak presioak jasan zituzten lehenbailehen jarduteko, oso garrantzitsua baitzen.

**G Brouarden hilketa ez zen izan GALen lehenengo ekintza.**

**E** Batzuetan, oharkabean pasatzen da GALen lehenengo ekintza [Jose Maria] Larretxea *poli-milia* bahitzeko saioa izan zela, Hendaian. Bahiketa egiten saiatu zirenen artean, Poliziaren GEO talde berezien hiru kide zeuden, bulartsuak eta aurrez aurreko borroketan trebatuak, Larretxea 120 kiloko gizonkotea baitzen, eta haiekin laugarren polizia joan zen, borroka antiterroristarekin inolako harremanik ez zuena. Polizia hori Bartzelonakoa zen, lapurreten kontrako hango taldekoa, eta hainbat lapurretatan dozena bat lagun hil izanaren ospea zuen. Bartzelonako lapurreten kontrako taldearen arduraduna nor eta Francisco Alvarez izan zen, Bilbora iritsi baino lehen. Beraz, hiltzaile hori Alvarezen konfiantzazko gizona zen.

**G Brouarden hilketaren inguruko lehenengo epaiketa 1993an izan zen. Zigortutako bakarrak Rafael Lopez Ocaña eta Juan Jose Rodriguez Diaz *El Francés* (armak legez kanpo edukitzeagatik) izan ziren, baina hilketaren antolatzaileak zigortu gabe gelditu ziren. Nolako sentipena utzi zizun epai hark?**

**E** Ikerketak oso emaitza urria izan zuen, baina esan behar da horretan Poliziaren ekarpena hutsaren hurrengoa izan zela. Ez zuten ezertxo ere egin. Are gehiago kontuan hartuta Poliziaren aldetik auzia argituta zegoela Brouard hil eta hamabost egunera. Poliziaren salatari batek esan zion [Antonio] Rosino komisarioari nortzuk ziren hiltzaileak; Rosino informazio hori auziaz arduratzen zen fiskalaren esku jartzeko bezain «arduragabea» izan zen, eta akusatuak atxilotzera zihoanean goitik gelditzeko esan zioten, bestela han guardia zibilak, CESIDeko jendea eta enparauak agertuko zirelako. Atzera egin zuen, eta fiskalak prentsara jo zuen, ikerketa hartan gertatutakoaren berri emateko. Beraz, hamabost egunean auzia argituta egon zatekeen, eta, hala ere, itxaron behar izan genuen, funtzionario batek epaitegira telefonoz deitu arte esateko guk bilatzen genuen Rafael Lopez Ocaña izeneko hori atxilotuta zeukatela bezperan emaztea jipoitu zuelako. Horrela hasi ginen hari hartatik tiraka. Morcillo atxilotzear geundela, berriz, norbaitek abisua eman zion, eta ihes egin zuen Kolonbiara, narkotrafikatzaile sare batek babestua, eta Masa ere Boliviara joan zen, oker ez banago Bartzelona 92rako segurtasun aholkulari edo horrelako aitzakia surrealista bat emanda.

> «GAL sortzeko arrazoien artean egon zen mendeku nahia, Casasen hilketa zela eta»

> «Auzia argitzeko Poliziaren ekarpena hutsaren hurrengoa izan zen; ez zuten ezertxo ere egin»

**G Zer dela-eta zabaldu zen berriro auzia urte batzuk geroago, 2003ko bigarren epaiketara iritsi arte?**

**E** Hori ere zorte kontu bat izan zen. Egun batean, prentsa irakurtzen ari nintzela, hara non ikusi nuen Morcillo Pinillo izeneko bat atxilotu zutela Madrilen droga trafikoa zela eta. Deklaratzera deitu zioten, dena kontatu zuen, baina gero atzera egin zuen. Hortik iritsi zen bigarren epaiketa, inor zigortu gabe amaitu zena.

**G Bigarren epaiketa hartan pentsatu zenuen hilketa argitzera iritsiko zinetela?**

**E** Ni ziur nengoen egiara hurbiltzen ari ginela, baina, era berean, ziur nengoen handik ez genuela ezer garbirik aterako, den-dena oinarrituta zegoelako babestutako lekuko baten adierazpenetan. Guk ez genekien nor zen lekuko hori, eta argi esan nion epaileari, babestutako lekuko hori *El Francés* baldin bazen, txarto gindoazela, hori profesional bat zelako. Aldiz, lekukoa Lopez Ocaña bazen, ordurako zigorra betetzen ari zena, jakin bazekiena engainatu zutela eta botata utzi zutela, hilketagatik agindutako dirua ere jaso ez zuena, orduan bai, ondo gindoazen. Baina lekukoa *El Francés* zen, eta azkenean gertatu zena gertatu zen, hots, hau eta bestea salatzen ibili ondoren azkenean atzera egin zuela.

**G Epaiketa horretan Rafael Masa, Jose Amedo eta Luis Morcillo epaitu zituzten, eta errugabe atera ziren, baina zein izan zen Julian Sancristobalen egoera?**

**E** Epaiketara iritsi aurretik, haren kontrako salaketa artxibatu zuten. Horregatik, orain hirugarren aldiz auzia zabaldu denean, pentsatzen genuen aukera bazegoela hura epaiketara eramateko, bere garaian epaitu ez zutelako. Aukera hori zegoela irizten nion ez orain Morcillok esaten duena sinesten dudalako, baizik eta ulertezina iruditzen zitzaidalako errugabetzat jotako pertsona batek, urte batzuk geroago delitua baliogabe gelditu denean, bere burua erruduntzat jotzea eta beste batzuk salatzea eta hori ez ikertzea, gutxienez lekukoak aurrez aurre jarrita jakiteko nork dioen egia eta nork ez. Epaileak hori artxibatzea erabaki du, eta guk errekurritu egin dugu. Horixe da oraingo egoera, eta uste dut datozen asteetan argituko dela.

**G Hain zuzen ere, zertan aldatzen du egoera Morcillok aurtengo apirilean egindako aitorpenak, zeinak aitortu zuen Brouarden bigarren hiltzailea bera izan zela?**

**E** Beretzat ez du ezertan aldatzen. Rafael Lopez Ocaña ere ibili zen epaiketan esaten errugabea zela eta dena nik prestatutako amarrua zela, eta duela hiru urte Tele5 telebistan agertu zen lasai asko, hiltzailea bera dela esanez. Aldaketa bakarra da Morcillo ari dela epaitua izan ez den bat salatzen, eta nik uste dut hilketa delitu batean, ikerketa ahal den neurriraino eraman behar dela. Badakigu horrek ibilbide laburra izan dezakeela, baina epaileak ezin du auzia besterik gabe artxibatu, egin duen moduan.

**G Horren harira, zuk deklaratu zenuen auzia «irteerarik gabeko bide batean» sartzen ari zela. Zergatik? Horrek esan nahi du justizia egiteko aukera guztiak desagertu direla?**

**E** Hau guztia nahiko esperientzia makurra izan da niretzat. Egia da jende honek gezurrak bolo-bolo botatzen dituela, baina batzuetan gezurren artean egia batzuk esaten dituzte. Ez oharkabean; seguru asko, onuraren bat atera nahian edo beste bati kalte egin nahian egiten dute, baina nire bizitza profesionalean jende gutxi ezagutu dut epaitegi batera norbaiten kontra deklaratzera joan dena arrazoiren bat tartean egon gabe. Arrazoi sasikoak kasu askotan, baina, hala ere, egia esan dute. Kasu honetan, nik uste dut mundu honetatik joango naizela pentsatuz niretzat dena erabat argi dagoela baina horretan ibili zirenek, aldiz, ez dutela behar bezalako zigorrik izan.

**G Zergatik zenbait kasutan onartu da GAL talde armatu bat izan zela, esaterako Jean Pierre Leiba eta Robert Caplanneren hilketen inguruko epaiketetan, eta beste zenbait auzitan berriz epaileek ez dute GAL talde armatutzat jo nahi izan?**

**E** Auzitegi bat saiatzen denean airean ile bat mozten, lortu egiten du. Caplanneren kasuan, faxista katalan talde batek hil zuen, Bartzelonako polizia batek zuzenduta. Nik eraman nuen epaiketa horren akusazioa. Hor uste dut zerikusia izan zuela agintari frantsesen presioak, azken finean Caplanne haien herritar bat zelako, baina egia da auzi horretan epaileak GAL talde antolatu eta armatutzat jo zuela eta akusatuak, hilketaz ez ezik, talde terroristako kide izateagatik ere zigortu zituztela. Oker ez banago, auzi horretan espetxeratutako Ismael Miquel Gutierrez da oraindik zigorra betetzen ari den GALeko terrorista bakarra.

**G GALen egiari dagokionez, parte bat ezagutu dugu. Zure ustez, parte hori zenbatekoa da? Zenbat gelditzen zaigu egia osoa jakiteko?**

**E** Badakigu noiz jarri zuten abian. Ez da egia, inoiz esan den bezala, abian jarri zutela Martin Barrios kapitainaren bahiketa eta hilketaren ostean, hori 1983. urteko urrian izan zelako, eta aurreko udan egon ziren mugimenduak errefuxiatuak kontrolatzeko. Lopez Ocañak deklaratu zuen uda hartan Donibane Lohizuneko kanpin batean egon zela errefuxiatuen inguruko informazio batzuk egiaztatzeko. Arrazoien inguruan, esaten da Gaston Defferre ministro sozialista frantsesak bere kide espainiarrei aholkatzen ziela frantsesek OASekin egin zuten bezala egiteko, atentatua atentatuaren truke. Gero, nik uste dut estatu itun bat egon zela GALen inguruan, Fragak eta Felipe Gonzalezek horretaz hitz egin zutela eta akordio bat egin zutela, batak egiten zuenaren aurrean bestea isilik egoteko eta horren inguruan ez eztabaidatzeko. Egituratzeko orduan, uste dut bitariko egitura erabili zutela: alde batetik, politikari sozialistak, eta, beste aldetik, horien konfiantzazkoak zirenak estatuaren segurtasun aparatu guztietan.

**G Eta jakiteko gelditzen zaigunaz?**

**E** Niri izugarri gustatuko litzaidake jakitea nortzuk joan ziren 1983ko udaberrian Guadarrama mendikatean [Espainia], estatuaren ondare den pabiloi batean egin zen bilerara, eta zein izan zen bilera hartako gai zerrenda, uste baitut han erabaki zutela GAL abian jartzea.

> «Nik uste dut estatu itun bat egon zela eta Fragak eta Gonzalezek honetaz hitz egin zutela»

> «Ikuspegi horretatik, GALek fruitu politiko garrantzitsuak eman zituen»

**G Zer dela-eta amaitu zen GALen jarduera?**

**E** GAL amaitu zen, oso argi, frantsesak hasi zirenean errefuxiatuak poliziatik poliziara entregatzen, 1947ko dekretu bat hautsetatik berreskuratuta. Hori da amaiera. Ordurako, nahi zutena lortua zuten, hau da, orduan «santutegi frantsesa» deitzen zutena amaitzea. Ikuspegi horretatik, GALek fruitu politiko garrantzitsuak eman zituen. GALeko mertzenario batek kontatu zidan behin aukera izan zutela motorrean joan ohi zen errefuxiatu bat hiltzeko errepidean metalezko hari bat jarrita, baina baztertu zutela, ekintzak bonbekin eta tiroekin egin behar zirelako, ikusgarriak eta deigarriak izan zitezen. Horrek erakusten du helburua zela ondorio politikoak ekarriko zituen terrorismoa egitea, eta ez soilki kontuak garbitzea.

**G Zuk jarriko zenioke izenik X jaunari?**

**E** Jakina. Santiagoren zaldi zuria zein koloretakoa da? Argi dago. Poetiko jarrita, esan genezake baduela zerikusia Guadalquivir ibaiaren altzoan jaiotako norbaitekin. Herrialde honetan batzuek esan dezakete ETAren buruzagitza osoa hiltzeko aukera izan zutela eta ez zutela egin horrek erreparo handia ematen zielako, baina arazoa da horiek ez dutela egia esaten ezta horrelakoak esaten dituztenean ere. Nahi izan zuten guztia egin zuten, inolako erreparorik izan gabe.



Jose Barrionuevo Barne ministro ohia eta Rafael Vera Estatuko Segurtasunerako idazkari izandakoa.

# Galderak erantzuteke

Lau sumario handi besterik ez dira egin gerra zikina ikertzeko. Aginduak gobernuak ematen zituela argitu da, baina bukaeraraino heldu gabe.

**Oihana Elduaien**

GALek 27 lagun hil ditu guztira. Horietatik ikertu eta epaitu direnkasuak bost dira: Joxi Lasa eta Josean Zabalarena, Santi Brouardena, Jean Pierre Leibarena eta Robert Caplannerena. Baina auzi horietako bakar batean ere ez dituzte galdera gutziak erantzun.

1984ko martxoan egin zituzten Espainian GALekin lotutako lehen atxiloketak. Daniel Fernandez Aceña eta Mariano Moraleda ultraeskuindarrak atxilotu zituzten, Jean-Pierre Leiba hil ostean. Biek lotu zuten GAL Guardia Zibila eta Espainiako Poliziarekin. Inork ez zien entzun. 1985eko abenduan 29na urteko kartzela zigorra jarri zieten.

Robert Caplanneren hilketagatik ere bost lagun atxilotu zituzten Bartzelonan. 1987an 26 eta 34 urte arteko zigorrak ezarri zizkieten. Epaituek GALeko kide zirela aitortu zuten; epaitegiak, ordea, ez zirela «talde terroristako kide» ebatzi zuen.

Handik hilabete gutxira, lortu zuten epaileek korapiloa askatzen hastea. Baionako Batxoki tabernaren eta Donibane Lohitzuneko Consolationen kontrako atentatuen erantzule izatea leporatuta atxilotu zuten Paulo Fontes Figueiredo. Haren deklarazioen bidez, heldu ziren Jose Amedo eta Michel Dominguez Espainiako polizienganaino.

Armand Riberolles eta Christophe Seys Baionako epaileak Madrilera joan ziren Amedori deklarazioa hartzera. Poliziak ez zuen hitzik egin, baina, jasotako informazioan oinarrituta Amedoren aurkako auzibidea zabaltzeko eskatu zion Carlos Bueren epaileak Auzitegi Nazionalari. 1988an Baltasar Garzonek hartu zuen auzia. Uztailean espetxeratu zituzten Amedo eta Dominguez. Urrian bi poliziak epaitzea erabaki zuen Auzitegi Nazionalak, Garzonek eskatuta. «Talde terroristako kide» izatea eta sei hilketa saio egitea leporatu zieten.

1989an, Amedok mertzenarioak errekrutatzeko erabilitako diruaren jatorria ikertzen hasi zen Garzon. Jose Maria Rodriguez Colorado Espainiako Poliziako zuzendari nagusiak onartu zuen Barne Ministerioaren funts berezietako dirua zela hura. Hala, 1983 eta 1987 bitartean funts bereziak zertan erabili ziren argitzeko eskatu zuen Garzonek. Ate itxiekin egin zuen, ordea, topo. Izan ere, diru horien erabilera sekretua da berez, eta delitu zantzuak egonik ere, Auzitegi Nazionalak Estatuaren alde egin zuen.

1991ko ekainean hasi zen epaiketa. Isilik egotearen truke espetxe onurak hitzeman zizkien Estatuak Amedo eta Dominguezi. Hala, 108na urteko zigorra jarri zien auzitegiak. Baina, aldiz, Juan Carlos Garcia Goena hiltzeaz eta talde terrorista bateko kide izateaz akusatu zituzten, baina errugabe jo zituzten. Sei urte egin zituzten preso, ohikoak ez ziren pribilegioekin. Denborarekin, baina, Madrilengandik jasotako tratuarekin haserre, hitz egiten hasi ziren bi poliziak, izua zabalduz.

## 'Marey auzia'

Polizia ohiek askatutako haritik tiraka, Julian Sancristobal Estatuko Segurtasunerako zuzendari izandakoa eta Rafel Vera Segurtasunerako idazkari ohia atxilotu zituzten. Urtebete geroago, Gorenak Barrionuevo auzipetzea eskatu zuen. Uztailetik libre zeuden Amedo eta Dominguez, eta Garzonek deklaratzera deitu zituen 1993an, Segundo Mareyren bahiketaren sumarioan. Oraingoan gogoz erantzun zieten galderei, bahiketan parte hartu zutela aitortuz eta arduradunen izenak emanez. Salatutakoen artean zeuden Miguel Planchuelo Bilboko poliziaburu izandakoa, Francisco Alvarez terrorismoaren kontrako inteligentzia burua, Sancristobak eta Ricardo Garcia Danborenea PSEko buru ohia. Ordainarazi egin nahi zioten Madrili petxero bihurtu izana, eta ahaleginak egin zituzten, Felipe Gonzalez bera GALekin lotzeko.

Barne Ministerioak Batxoki eta Consolation tabernen aurkako atentatuak finantzatu zituen argitzeko bigarren saioa egin zuen Garzonek. GAL finantzatzea leporatu zion Verari, hura antolatu eta Mareyren bahiketan parte hartzea Danboreneari, Sancristobali, Alvarezi eta Planchuelori. Danborenea eta Alvarez bermepean aske geratu ziren, eta uztailean baita Vera ere, PSOEk ordaindu zuen bermeari esker.

Espainiako Gobernuko presidente Felipe Gonzalezek GALen berri bazuela berretsi zuten Sancristobalek eta Danboreneak. Katea noraino heltzen zen ikusita, Gorenak hartu zuen *Marey auzia*. 1998ko maiatzean hasi zen Barrionuevo, Vera, Sancristobal eta beste hamarren aurkako epaiketa. Hamar eta bi urte arteko zigorrak jaso zituzten akusatuek.

## Lasa eta Zabala

Guardia Zibilaren parte hartzea argitara ateratzeko balio izan zuen Lasa eta Zabala auziak. 1995ean jakin zen hamar urte lehenago Bussoten aurkitutako gopuzkiak haienak zirela.

Angel Lopez Carrillo poliziak aitortu zuenez, Enrique Gonzalez Galindo Guardia Zibilaren Intzaurrondoko kuarteleko buru izandakoa eta Julen Elgorriaga Gipuzkoako gobernadore zibil ohia zeuden bahiketaren atzean. Guardia Zibileko buru zen Luis Roldanek hilketan inplikatuta zegoela aitortu, eta Vera, Barne Ministerioko abokatu Jorge Argote eta Enrique Dorado eta Felipe Bayo guardia zibilak salatu zituen. Azken horrek, berriz, Galindo, Elgorriaga eta Angel Vaquero Intxaurrondoko komandantea bertan zirela esan zuen.

Javier Gomez de Liaño epaileak Galindo, Vaquero, Elgorriaga, Dorado eta Bayo auzipetu zituen 1998an. Lau urte geroago heldu zen epaia: 67 eta 71 urte bitarteko zigorrak ezarri zizkien bost auzipetuei.

## 'Brouard auzia', oraindik zabalik

1993an Rafael Lopez Ocaña eta Juan Jose Rodriguez *El Frances* zigortu zituzten, Santi Brouarden hilketagatik lehena eta armak edukitzeagatik bigarrena. Sumarioan bazen, ordea, beste izen bat ere, Luis Morcillo Pinillosena. Azken hori 1997an atxilotu zuen Espainiako Poliziak droga trafikoagatik, eta Bilboko Auzitegiak kasua berriz irekitzea erabaki zuen. Orduako, Isabel Durantez epaileak Mohand Talbirekin hitz egina zuen. Talbi preso zegoen Mareyren bahiketan parte hartzeagatik, eta harengandik jakin zuten Amedok GALeko hainbat erasotan parte hartu zutela, tartean baita Brouarden hilketan ere. Talbiren esanetan, 1983ko abenduan, Bilboko Ercilla hotelean bildu ziren, eta 14 eraso egiteko zerrenda zuen Amedok. Azken horrek berretsi egin zuen bilera egin izana, eta Planchuelo, Alvarez eta Jean Pierre Echalier ere bertan izan zirela esan zuen.

Epaileak ondorioztatu zuen Sancristobalek funts bereziekin ordaindu zuela Brouarden hilketa. Rafael Masa Guardia Zibileko koronelari, berriz, leporatu zion Brouarden hiltzaile Morcillori ihes egiten laguntzea. 2003ko ekainean hasi zen Brouard auziko bigarren epaiketa hiru akusatuekin, Amedo, Masa eta Morcillo. Azkenean, ordea, aske geratu ziren hirurak, froga nahikorik ez zegoela argudiatuta.

Aurtengo irailean hirugarrenez ireki zuten auzia, Amedok auzitara jo ostean. Morcillo Pinillosekin izandako elkarrizketen transkripzioak eraman zizkion epaileari. Bertan Brouard berak hil zuela aitortzen zuen Morcillo Pinillosek, eta Sancristobalek eman ziola agindua. Morcillo eta Masari deklarazioa hartu ostean, hala ere, aurrera egiterik ez zegoela argudiatuta, artxibatu egin zuten auzia. Familiak helegitea jarri du.




Ramon Oñederra *Kattu* bakarrik zegoen, lanean, Baionako Kaietenia tabernan tirokatu eta hil zutenean, 1983ko abenduaren 19an. DANIEL VELEZ




Mikel Goikoetxea *Txapela*-ri Donibane Lohizunen eginiko omenaldia. Txapelaren bikotekide Izaskun Ugarte harekin zen 1983ko abenduaren 28an tirokatu zutenean. DANIEL VELEZ

# Karrikak odoletan



Segundo Marey, GALek bahituta 10 egun egin ostean. «GALen egia osoa argitu behar da, biktimek sufritzeari utz diezaioten», esan zuen bere kasuaren epaiketan. DANIEL VELEZ



Bonba bat leherrarazi zuten Ramon Orbe eta Tomas Perez Revillaren aurka, Miarritzen, 1984ko ekainaren 15ean. 43 egunera hil zen Perez Revilla —eskuinean—. EUSKAL MEMORIA FUNDAZIOA




Xabier Perez de Arenaza tiroz hil zuten, Miarritzen, 1984ko martxoaren 23an. DANIEL VELEZ



Joxean Lasa eta Joxi Zabalaren gorpuzkiak 1985ean topatu zituzten Alacanten (Herrialde Katalanak). 1995era arte ez ziren identifikatu. EUSKAL MEMORIA FUNDAZIOA